## A.O. EDO AZKEN OSTIRALA

Hileko azken ostiralero, iluntzeetan, herri eta hiriburuetan elkarretaratze isilak egiten dira. Isilak, bestelako ezberdintasunen gainetik elkarretaratze horietan aldarrikapen edo exijentzia bakarrak batzen gaituelako: "estatus politikoa orain, euskal presoak Euskal Herrira" leloak, hain justu.

Mami handiko aldarrikapena da. Batetik, egun euskal preso politikoek nahiz senide eta lagunok sakabanaketa politikarekin egunez egun jasaten ditugun eskubide urraketekin (osasun asistentzia eza, senide eta lagunen istripuak, isolamendu galeriak, jipoiak, trasladoak, euskaraz komunikatzeko eta ikasteko debekua, izugarrizko odoluste ekonomikoa...) amaitzeko bidea da gure senide eta lagunak euskal herriratzea.

Bestetik, gure herriak bizi duen gatazkaren behin betiko soluzio politikorantz pausoak eman daitezen eragile ezberdinen artean burutu beharreko elkarrizketa eta akordioetan

gure senide eta lagunek beraien ekarpenak egiteko baldintzak exijitzen ditugu estatus politikoaren aplikazioa aldarrikatzean. Euskal preso politikoak Euskal Herrian batu eta, beraien hausnarketek nahiz ekarpenek elkarrizketa horietan bere tokia, beste eragile guztiek bezalaxe, beraien aukera izateko baldintzak exijitzen ditugu: eskubideen errespetua, ez besterik. Ekarpenak, beste guztienak bezain onak ala txarrak izango dira baina, beste guztienak bezalaxe, manipulatuak izan gabe lehen pertsonan aurkeztuak eta kontuan hartu beharrekoak, zalantzarik gabe.

Euskal herritar, eragile nahiz instituzio ororen lana da beraz estatus politikoa aplikatuta euskal preso politikoak Euskal Herriratuak izan daitezen lan egitea. Izan ere, sakabanaketa politikarekin herri honek behin eta berriz eta milaka modutara euskal presoak Euskal Herriratzeko egin duen eskaerari muzin egiten ari zaie bi estatuak. Sakabanaketa politikarekin, gatazka politikoaren luzatzearen aldeko apustu egiten ari dira bi estatuak, ondorioz, euskal herritarrak bere ondorioak jasatera behartuz.

Horregatik, "estatus politikoa orain, euskal presoak Euskal Herrira" leloaren mamiarekin bat egiten duen edonori bere

eskaera plazaratzeko gunea eskaintzen diogu hilero-hilero, azken ostiralero, Etxerat elkartetik. Batuketa ariketa bat egin asmo dugu, hau da, hilero-hilero norbanako eta eragile berriak gehitu nahi ditugu elkarretaratze hauetara, guztion lanari esker lortuko baitugu herri honetako seme-alabak diren euskal preso politikoak lehenik Euskal Herriratzea eta, ondoren, guztien parte hartzearekin, gureak etxeratuko dituen behin betiko konponbide politiko eta demokratikoa aurkitzea.

ZENTSORE JAUNA

Zer kondatzen duk hik, Zentsore Jauna!
Zer diok gaur goizean, nere konfesore anonimoa!
Zenbat irri, poz, esperantza eta ilusio
zurrupatu dituk, bihozkabeko gizon horrek?

Bart idatzi nion maiteari, bart arratsean.
Malkoak zerizkien nere hizki dorpeei.
Brasa pixtu nahian, errautsa gaindi ezinik.

Zer kondatzen duk hik, Zentsore Jauna!
Bihotza hunkitu al zaik gaur, sekretu apurtzailea?
Hi, gizazentsorea; hi, barne arakatzailea;
inoiz zentsuratu al duk hire burua, gurun-purre horrek?

Nigarrari, marrumari ekin nion atzo arratsean.
Kuttunak, nere kuttunak, sekulan igarriko ez duen
etsipenari lotu nintzaion gau hotzean.

Zer kondatzen duk hik, Zentsore Jauna!
Zer diok gaur goizean, sentimendu kraskatzailea!
Inoiz zentsuratu al duk hire maiteñoaren irria?
inoiz hire umeen lo geldia?

Zer kondatzen duk, diot, Zentsore Madarikatu Jauna!

Iparrea
Herrera de la Mancha, 1986
*Martxan aldizkaria, 7. zenbakia*



## ESKU ARTEAN DUZUN HAU

Esku artean duzun hau ez da bokadiloa, ez. Denbora luzez pentsatu ondoren konklusio batetara iritsi naiz: hau aldizkaria da.

La Mancha honen erdian egindako hitugarren modulokoen aldizkaria. Lehenik "literatur aldizkaria" esatea bururatu zait, baina ez dakit... ikus dezagun izan daitekeenentz.

Idazten den oro al da literatura? Badirudi ezetz. Adibidez, erosketetarako zerrenda, euskaraz zein alemanieraz idatzia, ez da literaturatzat hartzen. Ezta matematika liburu bat ere.

Lan literarioaren funtzioa ez da zerbait azaldu eta zerbait berorren zerbitzuan egotea, baizik eta lanak berak sortzen duenaren zerbitzuan egotea. Sortze hau da, hain zuzen ere —eta berau burutzeko modua, modu estetikoa alegia— literaturaren izatearen arrazoia.

**Anonimoa**

**Herrera de la Mancha, 1987**

*Halankarri aldizkariaren editoriala*

Geltokien arteko bidean
trenak amets bat izan du.
Urte askotan bide berdina
egiten ibili ondoren,
burdinezko errailetatik
aske geratzen zela,
nahi zuen bidaia egiteko;
baina geltokiaren inguruetan
makinistaren txistu zorrotzak
bapatean iratzarri du,
jendea bere erraietan,
alde batetik bestera joaten,
tristeturik somatuz.



**Zalaparta**
**Herrera de la Mancha, 1987**
*Susa aldizkaria, 23-24.*

Makurkeriak zuzentzea helburu zuelarik, zaldun bat zebilen urrungo herrialde bateko basoetan barrena. Gizon trebea, ausarta zen zaldun hau, gau eta egun zaldiaren gainean, bere lantza, ezkutu eta guzi zebilena. Beti etsaien bila, ez zitzaion axola gizon multzo bati, armada bati edo edonolako piztizar bati aurre egitea: makurkeriak zuzentzea zuen helburu bakarra.

Zaldiak, Rozinante zeritzan zaldiak, neketsu hurbildu ohi zuen abenturara. Urrats nekeak, motzak luzatu ohi zituen, bere burua nekez mugituz.

Itxura Txarreko Zalduna zeritzon bidai lagunak zaldunari; bere gorputz argalak, indargeak, haizearen eraginez etzandako zuhaitzaren itxura ematen baitzion. Baina edonori laguntzeko, edonoren alde borrokatzeko edo edozein etsairi erasotzeko, beti zegoen prest. bere aparteko ausardiak hedatu zuen bere izena munduan zehar.

Abentura baten bila, Rozinanteren gainean, harrapaladan zihoan; atzetik, Santxo ezkutaria bere astoaren gainean, lasai hurbildik hizketan. Muino batetara ailegatzean, bi armada ikusi zituzten, garo artean izkutuka, elkarri erasotzeko prest. Eta Itxura Txarrekoak, lantza, lehenik armada bati eta gero besteari zuzenduz, gupidarik gabe eraso zien...

Garaipenaren ondorioz, harro zihoan Itxura Txarrekoa, aldamenean ezkutariak zer arraio zioen ulertzen ez zuelarik. "Artaldeak eraso ditudala; zer izpiritu maleziosok lausotu ote dizkio begiak...".

Bi armadak, erasoaren ondorioz, erabat sakabanatu egin ziren. Batzu hiluren lurrean zeutzan, beste ardiak basoan sakabanatu ziren, artzaina —armada burua— keinuka eta oihuka ari zitzaizkielarik.

Iñaki

Herrera de la Mancha, 1987

*Sua aldizkaria, 23-24.*



Zilegitzat nuen poemak idaztea,
baina mundu hau
ez dago kontu askotarako

Ene poemak
poliziak kendu zizkidanean
komisarioak esan zuen
"el cuaderno de las chorradas"
desartikulaturik zegoela.

**Pabel Ortzantza**
**Herrera de la Mancha, 1988**
*Susa aldizkaria, 23-24.*

Izar-herrartu batek
zeharkatu du
ortzea.

Oi, gauaren ederra!

Goiztiria hurbil den
tenore honetan
loaren
eneganatu ezinak
leihoratu nau.

Iraina ote ene ausardia,
ene
zureganako miresmena
olerkiratu nahia?

Jokin Urain
La Moraleja, 1989
*Susa aldizkaria, 23-24.*

Gauza aunitz
ikasi nituen liburutan:
kontaezinezko filosofiak eta
zientzi andana bat.
Ikasi nuen ere
neurtezin bezain
doilorra dela gizona.

Baina begirada baten xarma
eta edertasuna behatzearen poza,
hori, zugandik ikasi nuen, hori.

Jesta heroikoak ikasi nituen,
baita hondamen laidogarriak ere.
Hondarreko printzipioak ikasi nituen ere;
aljebra eta zenbakiak,
baita marra imajinarioak ere.

Baina larruaren zapore hordigarria
eta adieraezinezko ukipena,
hori, zugandik ikasi nuen, hori.

Ezinezko bidaiak ikasi nituen
marinel zaharrengandik.
Eskuraezinezko lurraldetatik eta
kokaezinezko ozeanotatik ikasi nuen ere;
baita koralezko mundu
eta paraiso helezinetatatik.

Baina argi-ezkila jotzerako alegrantza
eta eguneroko bizitzaren zoriontasuna,
hori, guzi hori eta aunitz gehiago, zugandik ikasi nuen.

Iparrea
Herrera de la Mancha, 1989
*Susa aldizkaria, 23-24.*

...Bizarra kendu behar, noski, nola ez. Azken orduan hartu ditut bi cuchilla gillette, berrogei pezta bakoitza; hogei ogerleko eman eta hogei pezta itzulian; eskutitz batentzat seilua ordaindu eta pezta bat sobra: hori kaxarako. Kario. Garestia da. Seilua hemeretzi pezta, sobrea beste bost: hogeita lau guztira; gehiegi nere eskutitzen balioarentzat. Baina gaur ez dut eskutitzik idatziren, hain gutxi igorriko. Gaur bizarra moztuko dut biharko bixitan txukun txukun aurkezteko.

Jaietako alkondara eta galtzak jantziko ditut. Galtzerdiek sekulako gaztazahar usaia botatzen dute, gudaloste oso bati ere atzera eragingo liokeen kiratsa. Baina kabinako beira ez du trabestuko kiratsak; kiratsa ezezik ahotsa ere ez bait da hain erraz pasatzen.

Askotan garrasika hitzekin behar izaten da, eta zerbait entzuten duzula uste duzunean zeure albokoen garraisi berberak baino ez dira izaten. Baina, halare, bizarra kenduta joango naiz. Okozpea urratuko dut, beti legez. Alkandorak zimur ugari dauzka; agian gainetik elastiko handi bat jaztea hobe. Galtzak berriz, zimurtuta daudela esatea baino zimur bat direla esatea egokiagoa deritzot, baina alkian eserita egonik ez didate ikusiko galtzen zimur eta bitxikeriarik.

Nor etorriko ote zait! Bo, berdin dio nor letorkidakeen, jadanik ikasiak ditut, buruz ikasiak etortzen zaizkidanentzako agurrak, irriak eta agurrak.

Arreba edo anaia baletor zigarroa piztuko dut lehenik, eta gero zer moduz dabilen galdetu. Berak ere galdera berdina egingo dit, eta biok batera, erantzun berdina emango diogu elkarren galdera leloari. Gero irrifarra. Inertziaz egiten den betiko irrifar irrifartsua; oso beharrezkoa da irrifar hori, beharrezkoa eta ekidin ezina ere bai. Ederra litzateke lehen agurrari irrifar batekin ez erantzutea!

Bai, bai, lehen agurrari irrifar batekin erantzun behar zaio beti. Amagiarreba bada letorkidakeena, ez dut zigarrorik piztuko; ez behintzat lehen kolpean, geroxeago bai. Asko erretzen al dudan galdetuko dit eta, ezetz erantzungo diot baietz pentsatuz, irrifar horietako bai eskainiko diot.

Bai, horrela izango da bixitaren hasierako errituala. Ongi jaten al dudan ere galdetuko dit beti bezala, eta horri ere ezetz pentsatzen dudan bitartean baietz erantzungo diot: alegia, ongi eserita jaten dudala.

Anaiaren neska-laguna etorri zitzaidan lehengo egun batez. Hazi egin zela esan nion; ez gorantz, zabalerantz hazi zela baizik. Ez zidan oso bekoki abegitsua ere eskaini. Gero jakin nuen sekulako errejimena egiten ari zela. Erdaraz falta de tacto edo horrelako zerbait esaten zaio ateraldi moeta horri. Bihar ere koinata gaia etortzen bazait argaldu egin dela esan eta konpondua dago itukina.

Edonor etorrita ere ezer esanik gabe geldituko natzaio berehala, eta ordulariari begiratuko diot behin eta berriz, eta egunero eta orduero neurekin bizi den eta alboko kabinan egongo den lagunari begiratuko diot, eta berak ere so egingo dit, eta luzeegi egingo zait bixita denbora, eta... bukatuko da bixita denbora.

Kabina batetik bestera, bixitan ezagunei agurka ibiliko gara guztiok, bati hitz bat, besteari keinu edo irri bat... haiek alde batetara, gu bestera.

Berriro geure moduloan. Kafe xorta bat harekin, beste kafetxo bat honekin.. "nor etorri zaik", "ongi al zebiltzak", "zer ziotek"... Egunkariak hartu, janari paketea, argazkiak, zapatilak probatu. .

Ziegara txokoraturik ohe gainean etzan eta, buruari itzulika, liburua eskatzea ahaztu zaidala konturatu, eta ene semearen berririk ere gutxi jakin dudala ohartuko naiz, damuz. Konturatuko naiz ez diodala beharrezkorik galdetu, eta esan beharrekorik esan, eta ez dut ulertuko nola demontre aspertu litekeen bixitan, eta nola kristo isilik egon naizen hainbeste gauza kontatzeko edukirik, hainbeste galdera egiteko izanik, eta...

Anonimoa
Herrera de la Mancha, 1989
*Susa aldizkaria*, 23-24.

ESPETXETIK

Ortze gabeko paraje mingots,
xortaka ximel diren hainbat bihotz,
zurbil harnak, burni, harresi...
haizeak dakar kantu eresi.
Hau da gertza!
Laidatu dute euskaldun giza,
gailendu zaigu bortitz paliza.

Arratsa gogorrak oinaze dakar,
zelda lizun hontan samin ta bakar.
Zutaz galdezka hainbat intziri
bainan alferrik, hau da martiri!
Ene maitea!
Nahigabe astunek naute betea,
suntsigarria da minkidea.

Negar-zotinka, mendre geratu,
luze ta astun gau madarikatu.
Grina zitalek naute ebaki,
bihar biziko naizen nork daki?
Zure beharra!
Mingor, txiro... ta arras bakarra.
Etor dadila txori goiztarra!

Agur maitea, agur laztana,
hainbat zorion ta laztan emana.
Etorriko da egun berria,
ez dago urrun udaberria.
Ene landare!
Hain eder eta hain paregabe,
nire barnean beti zerade.

Jon Tapia Irujo
Puerto de Santa María, 1992
*Musika: Anje Duhalde*
*Bakezaleak diskoa*

ZITA



Ez hadi berandu heldu zitara abisatu neuan
orduan eta lekuan.
Bakardade sasoian bizi gaituk, banaka eta
bakarminez, oldartuak,
inguratuak, elkartzea gehiegikeria duk,
kale bazterrean
lau minutuz hitzegitea ere arrisku larria duk,
baina azaldu hadi.
Ez duk bilera bat, enkontru bat bakarrik
bizi haizen jakiteko.
Ager hadi oraintxe berran, erlojuak
markatzen duen
mamulako une honetan, ez dadila hire
hutsunea heldu,
ez nazak denborari eta inguruari
amilondoari bezala begira utzi.
Gaur agertzen ez bahaiz, herenegun itxadongo haut
ezinezko beste kantoiren batetan

Joseba Sarrionandia/Nonbait, 1995

## ISPILURIK GABE DIHARDUT NIRE AURPEGIAREN BILA

Ispilurik gabe dihardut nire aurpegiaren bila
Neguaren katilu hotzean
Kanpoan elur malutak etengabean pilatzen doaz
Ezpainik gabeko musuen antzera
Postalik gabe dator gaurko gaua
Helbiderik gabeko kartazal hutsa dirudi
Eta argia itzaltzen dudanean
Ene ziega gau bilakatzen da
Eta bizitza isiltzera doala dirudienean
Nire gorputzak ez du zurean gordelekurik bilatzen
Eta zure gorputzaren ausentzia besarkatzen dut

Mikel Ibarguren
Fresnes, 1996
*Hemen gauak lau ertz ditu*

Aberria norbetak bere baitan daraman lur zatia baino ez da
Baina nire aberria irriño baten barruan kabitzen da.
Oroitzapenez osaturiko aberria da nirea,
zurea eta nirea,
izenik gabeko adio isil bat askotan
beti arte, ez dakit noiz arte bat
baina arte bat.

Horrelakoxea da nire gurazko aberria:
hutsa eta jendetsua,
boz minartua,
hurbil eta urruna,
bestelakotua,
ñimiñoa
poema baten barruan kabitzen den
aberria da nirea.

Mikel Ibarguren
Soto del Real, 1996
*Hemen gauak lau ertz ditu*

## ALBISTE ZIRINOLAK

Albiste zirinolak arrabots idorra
Nundi-nahitik minbera gure leihorra
Badirudi haize hau ez den aldakorra
Ilun kolore dakar soineko atorra
Astindu gogorra
Hilobian horra
Lagun maitakorra
Bihotz emankorra
Doluz jantzi berri da euskal alorra.

Ikusten baduzue norbait espetxera
Goiz batez eramaten argi aldera
Ez ausartu sobera laster erratera
Gaixtagin hutsa denik baizik eta bera
Dela ebastera
Sartu behera
Horrekin batera
Hiltzaile gainera
Debruak sortutako satan beltzera.

Satana izan ezik ezazue jakin
Maitasun handi batek du honera jin
Abertzalek badute bildu behin eta
behin
Parisera eraman luze egon dadin
Fresnes edo Fleuryn
Sante ala Osnyn
Beste nunbait berdin
Jasanaz mila min
Eta berak bezala orok Euskadin.



Ikusten baduzue burniz kargatua
Herri bat etsaiari nahiz oldartua
Ez pentsa herri hori denik aldatua
Baketsua zenetik bortitz bihurtua
Baina zatitua
Herri zanpatua
Bizi nahitua
Arrunt zutitua
Bere izaiteari hortzez lotua.

**Ernest Arranbide**
**Chateauroux, 1998**
*Musika: Joseba Tapia*
*Gaur presoak bihar poetak diskoa*
*Hain Zuzen diskoa*



Extremadurako emakume txikiak
beltzez jantzirik
beren gona estuekin eta galtzerdi grisekin
eta belaun zuriak agerian
kartzelara joaten dira
semea ikustera.
Handik
—abokatu bat ezin ordaindurik—
jujearengana,
eta beren haurra ez dela gaiztoa,
«badaki berorrek,
lagunarte txarra...»,
eta hutuzpalan aldiz itzultzen dira,
harik eta egun batean epaileak
sumario ahantzien pilatik
ale banaka batzuk irakurri eta
—eskumuturra kondiziotan baldin balu—
behin-behineko libertatea sina dezan arte.
Ama txiki beltzik ez duten presoak, berriz,
haiek, inork ere ez ditu gogoan.
Beraiek dira nonbait
lagun txarrak.

Xabier Izaga
Caceres, 1998
*Bart irakurtzeko gaur izkiriatua*

Barne munduan betitik
fantasi zale izanik
ezin jakin zenbat zuku
gelditzen zaidan oraindik
bakar suak ez duelako
inoiz inoren baimenik
ke asko baldin badator
prestatu ditut tximiniak
bertsoen garrak xulo bat
izan dezan gutxienik
horrela ez dadin behintzat
kiskaldu itxaropenik
ta amets egiten beti
jarrai dezadan dohainik
nortasun bidetxurretik
ibili beharko dut nik

Itsasotik itsasora
ametsaren ametsetan
igerian ibili naiz
betiko lelo zaharretan
suntsituz eta berpiztuz
utopi saltsa horretan
olatua hautsiezin
itzulika anitzetan
ulertzen ez baduzue
hemen zer esaten detan
edo txinpart berezirik
ez bada bertso sailetan
gutxienez busti opilak
maitasunaren esnetan
elikatzen duelako
hau bezalako unetan

kantauritik Karibera
Karibetik Kantaurira
lehentasuna aiteratu
sormenaren atarira
iristeko hautsitakoa
josiko duen harira
nortasunean jazteko
ta ez inoren neurrira
ezberdin izan daiteke
bakoitzaren sokatira
itsasertzetik itsasertz
edo menditik mendira
askatasunez bakarrik
bilatuko du distira
taupa denetan bihotza
hauxe eskatzen ari da.

Joakin Arregi
Erbestean, 1999
*Karibetik Kantaurira*

Aza-hosto baten neurria besterik ez zuen. Dozena erdi bat hosto ikusten zirenean, baten batek, ezkutuan bezala, aihotzez jo eta ebaki egiten zuen. Kimu izaretik gora egiten zuen berriro ere pikondotxoak.

Ziegatik jaistean eta ziegara igotzean ikusten zuen Lolok hosto bakarreko pikondotxoa, barruti itxi hartan...

Jakingo ote dute landareek non dauden?

Lolo, hitz urriko mutila, familiarik ez balu bezala bizi zen kartzelan. Beti bakarrik.

Hormaren arrailduratik irteten zen pikondotxoa, arraildura haren barrualdera begira jarrita. Nondik zetorren zuhaixka hura? Motzondo zahar batetik seguruen. Lolok sustrai luze-luzeak irudikatu zituen, lur beltz hezetaraino heltzen zirenak. Horma garaiek gorako zuten hainbesteko altuera imajinatzen zuen beherantza; eta zainen harizpiak emandako zurrupadatxoei esker bizi zela pikondotxoa zementu-azalean.

Udaberrian, pikondotxoa bere hostoen berri ematera zihoanean, Lolori ez zitzaion odola berritu. Defentsarik gabe geratzen ari zela zioen odol analisiak. Odola txuritzen bezala sentitu zuen Lolok. Nekearen bizilekua zen bere gorputza, eta bizileku horren leihoetatik zihoakion bizitza. Eta baten batek aihotzez jo, ebaki izan balu bezala sentitu zuen bere burua ere... bizitzaren zementu-azalera horretan.

Pikondotxoari begira, haren sustraiak noraino lurperatzen ziren aztertzen

hasi zen Lolo. Zainen harizpien hurrupadek bizitzeko adina bizipoz ekarriko ote zioten ala ez begira.

Eta haurtzarora jaitsi zen bere enbor horretatik, gazte denbora kurritu, familiaren pobreziak dastatu, drogak eragindako lehen bidaia hura eta... eta ez zen gelditu. Iigunak eta egunak, gau asko egin zituen Lolok bere lurraren sustratuan.

Zeri heltzen dio pikondotxoak bizirik irauteko?

Jon Gaztelumendi
Puerto de Santa María, 1999
*Haizea mindu gabe*

Gaua erroitz zitzaien zaldiei
arrats gorriaren mugan
goizminez itzuli zuten burua
balizko zubien bila
eta irrintzien oihartzunak
ez zien erantzunik itzuli.

Ibaiak dakartza gorpuak
haserre datoz, ahozpez,
aspaldiko lurraldetik;
mutu begiratzen diegu.
Zer erantzun ez dakigunean
zer galdetu ere ez dakigu.

Jokin Urain
2001
*Isilik doaz urak*

## DENBORAREN GARBIKETA

Nola deitzen da orenak eskuz akatzeko artea?
Goizalbak hatzazkalez urratzeko gaitasuna?
Arratsak eztarriratuz, gauak janez,
gordin-gordinak segunduak, minutuak tragoxka edaten,
geure burua denboraz orditzeko
ahalik eta lasterren. .
Nola deitzen da bizitzak bere estartak zeharka ditzan
jorratu behar den atzeraezinezko ildoa?
Eta zuk,
nola deitzen diozu honi?
Zelan izendatuko zenuke zigor ziegetako ibilera
maparik gabe eta lurralde ezezagun bezain ilun,
hotz eta zikinetan?

Joseba Mirena San Pedro
Tarascon, 2002
*Ataramiñe I*

## LANBROA BAIONA TTIPIAN

Zure oroimena abesti zahar baten
barruan bizi dela esaten badizut,
ez da gezurra egia esatera.
"Ez nago etxean: nahi izanez gero
utzi zure mezua bip-aren ondoren"
izan da utzi duzun azken arrastoa.

Zure ahoa dasta ezinean oheratzen naiz
eta zure bisaia bustia noizbait ikusiko
dudan ustearekin
jaikitzen naiz egunero.

Lanbroegi egiten du Baiona Ttipian.

Kate berean doaz hemen pozak eta
zorion ezak,
behin-behinekotasunean maitatzeko
aukera baino
ez baitu ematen deserriak.

Hurrago nahi zintuzket baina
kale bitarte zabalegia da zure eta nire
arteko hau.

Kare biziak ahazten ez gaituen arren.
malda atzetik mende bete odoltsua
badarorkigu ere,
geure esku dago aitzina jarraitu ahal
izateko bermea.
Zuk jakin beharko zenuke nik baino
hobeto:
nire herriak muga egiten du zure
deserriarekin,
zure gogoak iparralderagoko atzerrie-
tara narama nahitaez.

Maite zaitut,
eta honek ez dauka zerikusirik seman-
tikarekin.

Mikel Ibarguren
Aterbean, 2002
*Deserriko karrikak*

AGURRA

Agur esan nizun
ekain goiz batez
eguzki argiak
gure geroa
urgaineztatzen zuen.

Atzean
zure begirada izoztua
nirearekin laban egiten
uzten nuen
garzitutako ariman
belaontzia triste abiatu zen.

Zorizko egun hartan
bakoitzaren bidea
zeharkatzen hasi ginen
gure bihotz askatuetan
denbora zehaztura
betiko geratuko zen.

Basamortuko dunetan
iraganeko hautsetan
Zure izena zamatzen darrait
uda ezberdinetan,
neguko min uharre ilunetan
iraganari begira
bizitza isladatzen zait
bihotzeko oroitzapeneko
bidezidorretan.

Karmen Gisasola
Avila, 2002
*Atenamiñe I*

Beste manera bat ere atxeman nuen, aski laster, bakartasunaren sistemari aurre egiteko. Nola ez nintzen nehorekin mintzatzen ahal, deliberatu nintzen egunero kantuz aritzera. Ariketa ona iruditu zitzaidan, bai euskaraz aritzeko eta bai euskal kantuak ez ahanzteko. Lehenik zeldan hasi nintzen, harat-hunatka ari nintzelarik zeldaren barnean, atetik leihora joan-jinka. Oroitu arau, banazkien kantuak kantatzen nituen. Kantu bat hautatu eta oroitu bezainbat kopla ematen nuen. Eta gero idatzi egiten nituen. Oroimena lantzeko eta hiztegia ez galtzeko ariketa biziki ona da. kantu bat osorik edo ahal bezainbat eman ondoan, hitzak gogoan berriz ongi eta aski freskatu ondoan, beste kantu bati lotzen nintzen. Eta batzuetan, ibiltokian ere, kantu bat buruan nuelarik eta hitzak xekatzen ari nintzelarik, kantuz hasten nintzen, airearekin hitzak atxeman nahian. Hastapenean ongi, nehork ez zidan deus erraiten, ez zeldan, ez ibiltokian ari nintzelarik ere. Ibiltokian bi mugimendu edo lasterkaldiren artean ari nintzen kantuz, ez sobera gora, normalki...

Eta gero, ibiltokian nintzelarik, inguruetako egoitzetako horma alimaleei so, hainbeste leiho burdin sareztaturik, pentsatzen hasi nintzen bat edo bestearen gibeleko zelda horietarik batean euskaldun bat, enekin harremanetan sar laitekeela bat-edo izan zitekeela. Eta entzuten balu euskal kantu bat, enekin harremanetan sar laitekeela. Orduan egunero, goiz eta arratsaldez, ene kantua gero eta gorago ematen hasi nintzen ibiltokian, euskaldun batek entzunen zukeelakoan eta ene kantuari arrapostu emanen. Eta egun batez, goizeko ibiltokian nintzela-

tik norbaitek eman zidan arrapostu: Gora Euskal Herria! Ez nuen ikusten ahal, burdin zirien kontrako sareak itsutzen baitzuen soberan leihoa, baina itzal bat ikusten nuen han gora, azken estaiako teilatu peko azken lerroan, leiho baten gibelean. Ontsa hiza, Patxi?, erran zidan... Zer plazerra!

**Filipe Bidart**
**2004**
*Bakardadeaz bi hitz*



"AKELARRETARAKO HAUXE ABESTITXUAU"

Ataramiñe ataramiñe
ondiño bizi ga Santimamiñen
ez da bardiñe
hori jakiñe
hango bizipoza ta hemengo samiñe
hau leku urriñe hau zulo zikiñe
nun zauz Garbiñe neure erregiñe
maite zaitudala badinotsut ziñez
Mari Anbotoko Mari sorgiñe
neure bixotzak behar dauen hargiñe
zatoz maitie zatoz poxpoliñe
ointxe nau ointxe ni zeure premiñez
osatu eidezuz zauri gordiñek
bizitzako eziñek
egun eta gabaz zeure jakinmiñez
zeuri diarrez iztarriko miñez
lo banau sartu jo barik txirriñe
ametsera agertu zeure hanka ariñez
Urederran bizi dan azken lamiñe
umetxotan neukan trapuzko panpiñe
begitxuek ezti ezpañak guriñe
goxotan goxo fiñetan fiñe
hoba bizi giñen antziñe antziñe
erregiek leitxe han Santimamiñen
Ataramiñe ataramiñe
ogi gogorrari zorroztu hagiñe
ta gaiztuei beti ataramiñe.

Aitor Fresnedo
Alacant, 2004
*Ataramiñe 3*

# MINTZATEGI HANDI ETA ZABAL BATEN ALDE

- Lokutorioa...!
- Ez da gure hiztegietan ageri, eta hala ere...
- Lokutorioa...!
- Euskaldun askoren gogoan hotzikara berezia ematen duen hitza da.
- Preso dagoenak ezinegon batean bizi ditu lokutoriora pasa aurreko orduak. Nekearen handiak ezin zapuztu duen ilusioak darama bisitaria lokutoriora.
- Lokutorioan... zenbat maitasun, zenbat berba gozo!
- Lokutorioan... zenbat isiltasun mingarri, zenbat malko garratz!
- Elkar ikusten den lekua da lokutorioa.
- Elkar ikusten, alegia, aurrez aurre eta esatekoak esan-entzuten diren lekua da lokutorioa.
- Lokutorioa, elkar ulertzen den lekua da.
- Ziega berezi horretan, une labur batez, presoa bisitari da, eta bisitaria preso.
- Leku zabar horretan hogei-berrogei minutu egoteagatik, 60.000 kilometro egiten ditu urtean, batez beste, presoaren gurasoak, senideak, senarrak, emazteak, lagunak.

- Geografia baliatuz kudeatu nahi izan dute urteetan eta urteetan estatu frantsesak eta estatu espainolak geografikoa ez baina politikoa den arazoa. Alabaina, urrundua dagoen arren, preso politikoa gure espazio politiko berean bizi da, egunero dauzkagu frogak.
- Arazoaren zati denak konponbidearen osagarri izan behar du noski, eta horregatik, kulturan dihardugun gizon-emakumeok, gure herriak gero eta errotuagoa duen sentimenduarekin bat eginik, aldarri egiten dugu urruntasunaren geografia ez baina hurbiltasunarena erabil dadin. Hortik sortuko da, nekez bada nekez, askatasunaren geografia.
- Lokutorio bat behar dugu, parluar bat behar dugu.
- Lokutorioa, parluarra... euskaraz, dudarik gabe, mintzategia da.
- Hitz hori ere ez da gure hiztegietan ageri.
- Sortu egin dugu, errealitateak behartuta.
- Mintzategi bat eskatzen dugu, prozesu politiko berri honetako protagonista guztiek, baita lokutorioaren alde ilunekoek ere, elkarri hitz egin eta hitz eman ahal izan dezaten.
- Hitz egin, hitz eman.
- Ez ziega batean, ez helburu politiko zekenetan.

- Hitz egin, hitz eman... elkar ulertzeko.
- Oraindainoko hiztegi politikoetan ageri ez diren hitzak sortuz etorriko da errealitate berria.
- Mintzategi handi eta zabal baten alde gaude.